# MAIATZA

## EDO MARIAREN HILABETIA

MEDITACIONIAC MAIATZECO EGUN GUCIEZ EGUITECOAC, EGUNECOA EGUNIAN, AMA BIRJINAREN BICITCIAREN MISTERIOETAN GAINEN,

USCAL HERRICO APHEZ BATEC USCARALAT EÇARIA.



OLOROEN,

B. LAPEYRETTE, inprimaçaliac mouldezco leteretan eçaria.

1852.

# MAIATZA

## EDO MARIAREN HILABETIA.

MEDITACIONIAC MAIATZECO EGUN GUCIEZ EGUITECOAC, EGUNECOA EGUNIAN, AMA BIRJINAREN BICITCIAREN MISTERIOETAN GAIÑEN,

USCAL HERRICO APHEZ BATEC USCARALAT EÇARIA.



OLOROEN,

B. LAPEYRETTE inprimaçaliac mouldezco leteretan ecaria.

1852.

Mariaren hilabetia eguiten dienner, Pia çazpiguerrenac eman deitcen induljentciac, 1815 cen ourthian, Marchoaren 21ea egunian.

Hirour ehun egunen induljentciac hilabetiaren eguneal; eta induljentcia plenariöa, edo ossoa, comuniatcen den eguneco.

**Maria Birjina garbi eta thona gabiari.**

Birjina saintia! Çoure houiñetan eçarten diçut umilki liburu hau, çoure ouhouratu eta ouhouraeraci beharrez eguin dudana, esparantçareki intencioniac ene lanari bere mouldegaizkeriac pharca eraciren dereitçola. Balia daki-

çula hounen ounhartcia eta benedicatcia. Çuc benedicaturic eman diroçu bere ekhoitzpena bere denboran.



## IRACOURLER.

Uscaldun maitiac, cien Aita Amec goizdanic inspiratu dereicie Ama Birjinaren debocionia. Halaber cien arimen artçain hounec enthelegaeraci dereicie çouiñen balious den debocione maite hori. Erran dereicie Ama Birjinaren eguiazco debocionia, Aita saintu Eliçacoen erraniala, saintutarçuñezco señale segurenetaric bat dela, hala noula salbatceco medio hobenetaric bat. Saintu beçain jakintsun ciren Doctor hec erraiten die goratic; Mariaren eguiazco cerbutcharia ecin galtcen dela.

Erran ere badeicie cien Aita Izpiritualec: debocione horren hazteço, berotceco eta emendatceco pratica gucietan, eztela goçöagoric ez solidöagoric. Mariaren hilabeteco (çouiñ Maiatça beita) exerciciöac beno. Ere liburu hau uscaralat utçuli diamao ountsa guti phentsatu du debocione maithagarri eta maite hounen, gaiça berri bat beçala, ecaguteraztia. Badaki, eta eder çaio goratic erraitia; eztela, *uscal herrian*, guneric noun ezten Maiatceco debocionia eçaguturic orotçaz eta haboroez pratiçatia. Liburu hau eskentcen deicien Aphecac gogöan ukhen du; gobernatcen eta guidatcen çutien Artcaiñ subarreki batian, cien laguntcia debocione horren praticatcen, cien arimen houn içanen den beçala. Jinçöac detsala liburu hau iracourriren dienec bere sal-

bamentiaren eguin beharrez antsiatsiago içan ditian, bekhatia sordei hugunt; eta hanbatez haboro eta hobeki Jesus bere amareki maitha decen! Halabiz.



## Maiatceco debocionearen pratikac.

Mariaren hilabeteco debocionea ezta eguiten gaitz ez nekegarri. Lehenago erran daiteke, Birjina pare gabiaren ouhouratceco usatcen diren pratiketan, eztela aguian bat, ez bat, debocione maithagarri hau beno ehiagoric ez eta ere agradagarriagoric. Liburu hountan diren meditacioneac lagungõa handihat dirateke, seriouski iracourten eta gogoan erabilten direlaric.

Mariaren hilabeteco exerciciõac eguin ditazke biguisaz: publicoki, Eliçan; edo: etchetan, nour bera

delaric, edo lagunekin, familian. Jincöari esker, Eliçan eguiteco mouldia eracasten beiteicie cien Artçaiñ hounec, heben ezta kestione içanen etchetan eguiten den debocioniaz baicic.

1.ᵉ Besta hounec badie bere bezpera. Hartacaz maiatz lehenaren aitcineco egunetic eçari behar da, etchecöen hobeki datekian khanbera edo gunian, mahaiñ bat, bere guisa beztitia, althare chipibat baliz beçala, eta mahaiñ hartan Ama Birjinaren potret edo imajina bat ahal beçain ountsa aphaintia, eçarten çaitçolaric bedera aldetaric bouketac, sasounco lilietaric eguinac.

« Aita amec ountsa eguinen die
» bere haur chipier lili hayen hilarastia, erraiten çaielaric: Ama
» Birjinaren bouketa eguin decen.
» Haur inocent hayen ohoreskie

» agradatuco çaio Celuco Erre-
» guiñari; hala noula haurrec ik-
» hassiren beitie, goizdanic, Maria-
» ren maitatcen eta enhouratcen.

2.° Egun oroz althare haren aitcinian nourc, berac, edo bere familiareki batian, Maria saintiari bere othajiac emanen deitço, be-hin berere bisita bateguitez. Han er-ranen dira *chapeleta* eta Ama Bir-jinaren *Lethaïñac*, edo beste cer-bait othoitce, nourc bere debocio-niaren eta aisinaren araüera. Da-kienec iracourriren dutie liburu hountan diren meditacioniac, egu-necöa egunian, eta goratic, lagunic balin badie, hanitch baliaturen betçaitce. Houn liçateke orano Ama Birjinaren aitcinian goiz, ar-ratsetaco othoitcen eguitia.

Maiatz lehenaren bezperan, Ma-riaren hilabetia algarreki eguin mahi dienac bilduren dirade ertan

dugun lekhiala. Erranen tie lehenic Ama Birjinaren lethainac, eta guero batec fracourriren du, bestec entçunen ahal dien beçala; bezperaco meditacionia.

« Erran gabe doa Eliçan publi-
» çoki eguiten balin bada Maiat-
» zeco debocionia, combeniago de-
» la Eliçaco exerciciôer jarraikitia,
» etchen bardin eraikiten delaric,
» erran beçala, altharebat, eta
» egunian bisitabat berere egui-
» ten caïolaric.

3.[io] Mariaren hilabetia, debotki eta erranic den beçala, eguinen dienec irabaciren die Maiatzeco egunkal hirour ehun egunen induljentcia; eta hilabeten barnen cofesaturen eta communiaturen diren egunian induljentcia ossöa.

4.[io] Aplicatu beharda maiatzian, ohi beno hobeki orano, Erlijioneco eta bere estatuco eguinbiden

eguin oroz complitcera, intentcionez juntatcen delaric Ama Birjina debocione berhecibateki ouhouratcen dien arima houner.

5.ic Egun oroz iratçatciareki ofritu behar dira, Jesusen eta Mariaren ouhouretan, egunaren bidian eguinen diren obra guciac, nouizian behin berritcen delaric oberenda hori, eta meditacioniaren iracourtian eguin diratekian ereflecccioniac gogöan arra erabilten direlaric.

6.ic Hilabetiaren hastiareki, adelatu behar da dignoki sacramentien errecebitcera.

7.ic Aplicatu behar da bekhatu orotaric beguiratcera eta berheciki endjoguienic denetaric. Arrax oroz examinatu behar da egunaren bidian eguin diren bekhatietan gaiñen, eta berheciki ardurenic eguitera endjogui guirenetan gaiñen.

Guisa horrez agradaturen çaitço Mariari hilabete hountan emanen çaitçon ouhouriac, eta Ama houn haren lagungöa merechituren deikie.

« Erran gabe döa ahal dianac
» ountsa eguinen diala egun oroz
» ineça entçun deçan.

» Ama Birjinari eguiten ahal
» çaion othoitceric agradagarriena
» na da, arrosarioaren, edo haren
» phartebaten, erraitia. »





JINCOAREN AMA,
gouretçat othoitce eguiçu.



# ANDERE-DONA MARIAREN

## HILABETIA.

### MAIATZ LEHENAREN BEZPERAN.

« *Ama dukiana arartecari salbatu-*
» *ren du semiac.* »

HASTERA doua hilabete bat, çouintan J.-Kristec eman ceicun ama hounac, ahur bethez, ichouriren beitutu bere haurretará Jincoac eskietan eçari deitçon gracia abondantac. Egun oroz ibeha dateke Ama Birjina, nouiz hari gomendaturen guiren, bessoac çabalic goure errecebitceco. Noula beraz egon hari hersatu gabe? Erakouts deçacogun goure arimaco çauriak, hen sendotceco nahia eta ahala badutu. Orai

artian ezguira hanbat aplicatu berthutiaren praticatcera, eta bekhatiari sobera emanac içan guira. Eztuguia nahi ingoitic erreparatu gaizki eguiten edo ezacholkerian berere galdu dugun denbora? Orai artian eternitatiaz beno haboro ocupatu guira mundiaz, goure intresez eta plazerez. Hil beharbagunu orai; erran ahal othe guiniro; Jincöa gaiça gucien gaiñetic maitatu eta houra bera cerbutchatu dugula? Eta hala eztenaz gueroz, cer ugurikitceco gunuke haren justiciatic?

Elas! eguia da, Birjina saintia, herraturic ibili niçala, ifernia merechitu dudala. Bena bekhatoren ama eta ihes lekhia beitcira hersatcen nitçaitçu, segurtaturic, çu ararteKari balin baçutut, Jincoac gracia eguinen dereitadala. Egun oroz, hilabete hountan, ene othoitciac eguinen dereitçut, offritcen deitçudalaric ene lanac eta ene nahi gabiac; eta çuc laguntaren naiçu bekhatutic elkhitcen eta Jincoareki baketcen; amorecatic eta hebentic aitcina eztoçadan eguin, erran ezgogöan etcheki deus Celuco khoroa gal erazten ahal dianic.

« Maria saintia gouretçat othoitce-
» eguiçu.

« Heben eguin behar da *contricio-
» nezco acte bat* bici orota cobekhatiez,
» eta erran *Paterbat*, hamar *Ave Ma-
» ria* eta *Gloria* behin hilabete hou-
» nez baliatceco graciaren galthatceco.





## LEHEN EGUNECO MEDITACIONIA.

*« Celuco içar arguiac eder cireye,*
*» bena ederrago da Jincöaren gracian*
*» den arima. »*

Bere obra gucietan handi eta miragarri da Jincöa, bena deusetan fediac eztu haiñ ountsa ikhousten haren handitarçuna eta magnificentcia noula bere haurrer eguiten deitcen graciazco dohaiñetan. Nahi dutuguia arren, gouri emanic den beçanbat, celebratu Jincöaren photeria eta Mariaren gloria? Felicita deçagun goure ama houna boztarioreki Jaun celucoac eguin ceron lehen graciaz, bekhatu orijinaletic escusa eguin cianian. Eci Eliçaren sinhestia da, *eztelaric fedezco articulubat*, Jincöac, bere semiaren amataco haitatu cialacoz Maria, nahi ukhen ciala thonaric gabe içan çadin. Ala eder beitcen Mariaren arima hain chahu elkhiric Jincöaren eskietaric !

Ni aldiz cer nintçan sortcian? creatura miserablebat; ordindanic bekhatiaz khoçatia; ordin danic bethicoz galdia, batheiuco houretan chahatja içan ezpanintz. Debriaren esclabo nintçalaric, sacramentu haren medioz, Jincoaren haur eta celuco primu eguinic içan nintçan. Bena, elas! gueroztic esker gabe eta infidel içan niz, hautse dutut ene hitz emanac, theïutu dut, bekhatu eguinez, batheiarrian jauntsiric içan ceitan inocentciazco arropa chouria; noure nahiz eta jakin aurraurka jarri niz demoniöaren peco, nahiz arnegatu ukhen nian haren ponper eta obrer.

O Maria, ene Ama houna, jardiets eçadaçu lehen sacramentu horren profanacioniaren pharcamentia. Maradicatcen diçut eguna, çouintan lehentce bekhatu eguin beitut. O çu, bekhatu gabe contcebitu cirena, balia çakizkit. Çoure medioz eta penitentcia eguiten dudalaric pharcaturic içan bekit ene inocentciaren galtcia.

« O Maria bekhatu gabe contcebitu
» içan cirena, gouretçat othoitce e-
» guiçu.

» Contritcionezco acte bat haurça-
» roco bekhatiez pharcamentu galt-
» hatceco. *Paterbat*, hamar *Ave Maria*
» eta *Gloria* behin, jincoaren gra-
» cien hebentic aitcina hobeki pheret-
» chatceco eta hetcaz baliatceco gracia
» galthatcen delaric. »





## BIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

*« Gai ülhun batez herraturic ibili*
*» dena alagueratcen da ezcorriaren*
*» aguertciari : halaber, o Maria ! ala-*
*» gueratcen guira çoure sortciari. »*

ASPALDI cian Jincöac, hanitchco miracullüz, bere amorio berhecia eçagutcera emanen ceïola bere haituzco populiari, çouin beitcen Judiöen nacionia. Haleric ere, populu esker gabe eta gaisto houra nahassiric eta herraturic çagöen, Jaun handiaren hountarçunac eta profeta saintien abertimentiac ahatceric. Usumentiac, inpieta iac eta gaistokeriac. lanho theiu beltz batec beçala mundia hartu cien. Aski nekez, han heben, khaussitcen ciren familia saintu bacant batçu, çouintan fedia eta berthutia ezpeitciren orano galdiac. Hetaric batetan sortu cen Maria, Maria goizanco arthiçarra, arthore ezkorri ederra çouintaric jin behar beitcian justi-

ciazco ekhi ederrac, mundiaren arguitceco eta guiçonen celuco bidian eçarteco. Mariaren sorteiari, lurra boztu cen, celia alagueratu, ifernia ikharatu eta icitu. Cer plazera hanbeste arima hounen çouin linbouetan beitçaudian aiduru nouiz sortharen cen pharadussia ideki behar cerena! Goure ere cer abantalla sor çadin, Maria denaz gueroz, sinhesten dugun beçala, goure salbaçaliaren ama, goure arartecaria Jincöaren eretcian, eta goüre ihes lekhia goure behar ordu gucietan!

O Maria! Cer egun handia eta benedicatia, çoure sortzecöa! Eniaz hála hala erran othe dirot? Badakit hiltzeco sorthu içan niçala, egun oroz llaburtcen ari dela enetaco bicia. Halere bici içan nuçu gueroco arrancuraric gabe, bethicoz mundu hountan banintz beçala. Arte hortan Demonioac, mundiac, nihauren naturra tristiac nahasiric erabili nicie. Haur naiçula orai, utsu tristia, çoure hounetan bekhatiaren herecha ahalkegarrieki. Eneçaçula, othoi, abandona. Argui eçadaçu enthelegüia, hounki eta khanbia eçaçu ene bihotça. Eue phartez Jincoari pharca-

mentu galtha eçoçu. Çoure medioz Jincoac eguin deçadala gracia ountsa enthelegatceco, couiñen llabur den denbora, çounbat luce aldiz eternitatia.

« Ama maitagarria gouretçat othoit-
» ce eguiçu.
» Contricionezco acte bat, denbora
» pheretchatu gabez pharcamentu gal-
» thatceço. *Paterbat*, hamar *ave Maria*
» eta behin *Gloria* etc. bethi fidel egoi-
» teco graciaren galtatceco. »





## HIROURGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

### Mariaren presentacionia.

*« Gaztian chuchen döen çuhaiña,*
*« guero ere içanen da hala : gazteça-*
*« rotic jincoa diaña cerbutchatcen ne-*
*« kez herraturen da. »*

ADMIRAGARRI dira jincöac Mariari eguin deitçon graciac sorthu deneco. Hala hala ezta deus bihotçaren haiñ hounkigarriric, noula creatura pare gabe harec eguin cian usajia bere entheleguiaz eta bere bihotçaz. Graciac arguituric eta inspiraturic eçagutcen du beste emazte gucien artian içan dela haïtatia ; jincöac deitcen diala mundiari arnegatcera eta hari contsecratcera, eta lehiatcen da hari bere buriaren ohorescatcera. Eztialaric laur ourthe baicic; pharticen da etcheric, bere ascaci maite eta saintiac besarcaturic, Adio erraiten du mundiari eta badöa

bere buriaren tenploan cerratcera jincŏaren cerbutchatceco, doluric gabe eskentcen deitçolaric bere arima, bere bihotça, bere esparantchac, bere içatia osso ossŏa. O eguitate pare gabia! O berthute goistiarra! O ez acholtarçun ecin enthelegatuzcoa mundiaren eretcian, graciac baicic ecin emaiten diana adin hortan!

Nic aldiz noula eta certan igaran dut ene haurçarŏa. Pharteric hobena galdu dut celucotçat. Eta orano entheleguiaren adiniala heltuz gueroz, eçagutu, cerbutchatu eta maitatu banu jincŏa? Bena, elas? ez deuskerian, ez acholtarçunian, arhinkerian igaran dira ene egun haborŏac; behar bada bekhatu gucietan pharteliant içan niz.

O Maria! enetçat othoitce eguiçu. Merechi ukhen banu beçala biciric utci niçu jincŏac, eta, nahiz salba nadin, denbora galdiaren erreparatceco bidia eman ditadaçu. Birjina saintia, jardiets içadaçu ene bekhatien pharcamentia, eta lagunt neçaçu hebentic aitcina gobernatcen guisabatez noun hiltceracŏan ez nadin guertha merechimentuzco obraric gabe.

« Ama admiragarria gouretçat otho-
» itce eguiçu.
» Contritcionezco acte bat eta guero
» *Paterbat*, hamar *ave Maria* eta be-
» hin *Gloria* etc.»





## LAURGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

### Maria tenploan.

*« Naharren pian dagöen lilia neke-*
*» zago da igaraiten, halaber mundiari*
*» bazterretic dagöena berthutiari uk-*
*» horik gabe jarraikiten. »*

JERUSALEMECO tenploa ihes lekhu bat beçala cen, noun sartcen beitciren mundiaren khoçu gaistotic beguiratu eta Jincoari osoki içan nahi cirenac. Aita ama çounbaitec bere haurrac han offritcen çutien, Jincoaren hegalen pian escola litian. Mariac, bere motaz, bere buria ofritu cian. Han aplicatu içan cen berthutian, egunetic eguniala, aitcinatcera, othoitcian eta tenploco cerbutchian ocupatuz. Lekhu houra egonguiataco, haur nahi bada, haitatu ukhen cian bere buriaz segurrago içan beharrez. Erran gabe döa, çounbat nahi umil eta ichil çagöela. Hanbat cen

modest bere mihian, bere beguietan, bere souñian, eta bere maneria orotan; noun lagunec aski beitcien haren ikhoustia berthutiaren maitatceco eta praticatceco. Eta cergatic bere buria biciric hola ehortci ukhen cian, conparacione? Çakialacoz neke dela mundiaren artian içatia, haren hatsaz khoçatu gabe, bekhatiala endjogui guirelacoz eta flacoere. Enthelegatu cian cerbaitegatic Izpiritu saintiac erraiten deicula: Gogomacie, erne içan citie, eci cien etsaia, Debria, ezta behinere lo; unguru unguru ari çaicie, gose errabiareki den lehöa beçala, erphai, nouiz iretsiren ahal çutien.

Eta nic aldiz! eztut hounic, noun eniçan mundiaren artian! Erho çarra, ni! bethi plazeren ondöan nabila, galtceco erriscutan. Papilloun arhina beçain buru gaberic, erre naian suian sarthu niz, argui traidorebatec enganaturic. Jhes eguiteco lekhutan, buruz jouan niz erhoki otsöaren ahoala, ezpeita espantagarri galdu baniz ere!

O Birjina houna, Birjina ecinago çuhur eta abisatia, çer phikhöa eztu hantu çouré bihotçac, ikhousiric ene

abisu gabia eta ene erhokeria ! Aithor dereiçut eta dolumeneki, chercatu dutudan beçala, ebitatu balin banutu ocasione gaistoac, enikezu orai dudan beçainbeste ahalketceco eta doluturic içateko bide, eta hanitch bekhatutaric escusatu nun dukeçun. O Maria ! çouri nagoçu, çoure medioz, Jincöac pharça ditçadala igaranac; çoureki batian orhit ukhen deçadan hebentic aitcina, mundian eztela galgarri baicic; haren plazer udurik coetan eztela ondotic phena, arrancura gaisto eta bihotz min baicic; eztela eguiazco bakeric, boztarioric ez descantsuric berthutian baicic o Maria ! balia çakizkit, amorecatic hebentic aitcina arrahent içan nadin ocasioner ihes eguiteco.

« Birjina ecinago çuhurra gonretçat « othoitce eguiçu. Contricionezco ac« te bat haur çaroco eta gaztetar çu« necô hutsez. *Paterbat*, hamar *Ave* « *Maria* eta behin *Gloria* etc, galthat« cen delarik gracia, munduco land« jeren eçagutceco eta ebitatceco. »

—



## BOSTGUBRREN EGUNECO MEDITACIONIA.

« *Gora içan nahi dena egotchiric*
« *içanen da; bere baruz aphaltcen*
« *dena gora eraikiric içanen da.* »

Pare gabe cen Mariaren berthutia, ceren bere indarrer fida gabez ecinago çuhur eta abisatu beitcen. Ihes eguiten cian ez solamente bekhatiari bena bai haren ocasioner ere. Bekhatiarentaco beçain lotsa cen haren itçalaren ere. Haren amorioa edo caritatia bazter gabe cen; elçakian cer eguin Jincoari eta protsimoari bere eguinbiden eguiteco. Bena orotan gainti umil cen eta hain umila, non, cen beçain perfeitic, bere buria ororen peco etchekiten beitcian. Ere Jincoac beste creatura gucien gainetic eraiki ukhen cian. Othoitcetan çagoen aldi batez, Jaun celucoaren meçuz, jin ceron Aingurubat, ohorezco eta laidoriozco hitz hoyen erraitera: « Salutatcen çutut, Maria, *graciaz* « *bethia*, Jauna da çoureki, benedi-

« catia cira emazte gucien artian eta
« benedicatia da çoure sabeleco frutia,
« *Jesus*, (çoinĩen amataco haitatu
« beitçutu Jincöac.) »

Elas! eniçalaric, Maria beçala, Jincöaren graciez baliatu; eztudalaric sobera bekhatu baicic eguin, gaiskia cerden jakin behar endkian adinbatetan ere, Jincöaren ainguruabatec, aphecçac anontçatu ceitan nouirzbait eni ere; Jesus nitara jin nahi eela comunionian, Mariaren sabelian hartu çutian khorpitz eta arima bereki. Handi içan cen ene boztariöa Bena haiñ handi içan cirena ene eskerra eta amoriöa Comuniatoian? Jesusi eman nintçana oso ossoa, houra eni eman içan cen beçala? Noula adelatu nintçan lehen aldicoz comuniateera? Ajtoinetic eguin nian cofesionia houna othe cen? ene bekhatiac osoki eta lealki çabaltu nutiana. Contcentcia aski ountsa ikhertu gabez, edo ahalkez, edo lotsaz, utci niana batere erraiteco? Eguiazki doluturic nintçana Cobesatcian, Jincöa ofentsatuz, eta bekhatia hugunturic nintçana? Cer frutu idoki dut ene lehen comunionetic? Doctor handi batec dio: comunione houn

bat aski dela saintu eguiteco. Cer phentsatu behar dut hanbeste comunioneguerortic eguin dudalaric, bethi ohikoa edo sordei baniz?

O Maria! eçaguteraz eçadaçu certan huts eguin dudan ene orai artinoco comunionetan, eta berheciki lehen lehenian. Çoureki batian nahi nuudukeçu, gaurgoiti, lan handi hortara, behar den beçala, adelatu; amorecatic bestec bicia edireiten dien uthurrian ezteçadan nic phoçouat ene arima.

J. Kristen ama gouretçat othoitce eguiçu.

« Contricionezco acte bat, comunio- » netan eguin hutsez pharcamentu » galthatceco. *Paterbat*, hamar *ave* » *Maria*, eta behin *Gloria*, hebentic » aitcina behar den disposicioneki co- » muniatceco graciaren galthatceco. »





SEIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Mariaren arrapostia Aingurari.

*« Urrinic hobena bertan galtcen da » airetic ezpada beguiratcen : hala cha- » hutarcuna ere arrahenki ezpaçaiö » soguiten. »*

Nola hartcen dutu Mariac Ainguriaren laidoriöac eta agourrac? Bozten eta alagueratcen da duda gabe berri handi horren entçutiari? Ez ; ebandjeliöac dio troublatu içan cela. Eta cergatic othe? Batetic; umil delacoz, laidoriöac eztutu ountsa hartcen : bestetic ; birjina delacoz, eta birjina egoiteco boto eguinic, ama iceneac lotserazten du, beldurrez birjina içaletic bara behar dakion. Ere, bere hitça hauts beno lehen jincöarenjama içateco ohoriaren errefusatcera dago. Bena ainguriac erran deron beçain sarri, *Ama* içana gatic, Birjina barnatuco dela,

bihotça alagueratcen çaio, eta erraiten du berhala: Jincoaren nescatoa niz, agui bekit çuc dioçun beçala. O cer umilitatia! O fidelitate pare gabia! O çuhurtarçun espantagarria! Deusec eztu Maria bere ideatic khambierazten, ez Aingurubaten erranec, ez haren laidorioec, ez haren hitcen arabera ukheiten ahal dian ohore handiac. Badaki eztela deus hain maitagarriric noula Bijinitatia, garbitarçunac aingurien pare eguiten gutiala; beste orotan gainti jincoari hain agrada çaiola berthute hori, noun birjinentaco lekhu berhecibat beita celian.

Ni ere horic oro jakinic niz. Bena bethi orhit içan niça? Estimatu duta chahutarçuna, merechi dian beçala? Ez othe laket içan çaitçat bihotçaren phoçouagarri diren laidorio, lausencu, eta elhe ederrac? Beguiratu niça chahutarçunaren gulgarri diren adiskidantça landjerousetaric? Gutiz haboroac bekhatu eguitera erakharten dutien solaz, libertimentu eta nabasturrier ihes eguin duta? Orhitu niça, izpiritua laster eta urhin beçain, natura flaco dela? Eta chahu içan nahi dianac,

ocasioner ihes eguin behardiala, bere begui eta beharrier ountsa abisatu, eta othoitcia eta umilitatia praticatu? Elas! çounbatetan eniz tentacionian erori, noure buriari fidatuz, oro ikhoussi eta entçun beharrez, escusa nintçatekialaric?

O Maria! halia çakiskit. Çoure exenpliac erakhar neçala hebentic aitçina noure buriaz mesfidatcera, ocasioner ihez eguitera, noure begui eta beharrien errespetutan etchekitera, eta othoitce hounez tentacionen garhait çera. Beguira neçaçu, othoi, landjer orotaric.

« Birjina ecinago chahü eta garbia,
» gouretçat othoitce eguiçu. »

« Contritcionezco acte bat chahutarçunaren contre eguin bekhatiez *Paterbat*, hamar *Ave Maria* eta *Gloria* behin, hebentic aitcina chahu egoiteco graciaren galthatceco. »



## ÇASPIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Anonciacionearen gainean.

«Dohatsu dirade fede dutenac: Jincoac ezteitu utcico galdeccen, miraculluric eguinen badu ere hen favorietan.»

Anonciacionian Mariac eman deicu, gradoric gorenian, umilitatiaren, prudentciaren, eta amoriöaren edo karitatiaren exemplia. Misterio hortan ikhousten dugu orano haren fediaren indarra eta susmissionia. Ainguriac anonçatcen deio, Birjina delaric baratcen, mundian eçarrico diala Jesus, *Berbo eternala*, Aita beçain perfeit dena, eta mundia arguitu eta salbatu behar diana. Galthatcen dia horic noula içan ditazkian, sinhestez flaco çatekianac galthatu çukian beçalà? Ez. Nahi bada desaperent uduri-lukien hitz hoiec, segurtaturic den beçain sarri, eztiela

deusetan hautseren Jincöari eguin deron botöa, utsutuki sinhesten du eta umilki ihardesten : agui bekit çuc dioçun beçala.

Eta nic erraiten ahal duta sumeski sinhetsi dutudala goure Erlijioneco eguiac? Entçunic niz berhain fedia gabe eztela salbamentaric. Ikhasi eta sinhetsi duta badela Jinco bakhoitz bat eta bat baicic içan eztaitekiala? Badirela Jincoatan hirour persouna berheci, perfetcionez bardin direnac? hirour hetaric bat, *biguerrena*, J-Krist deitcen dena., guiçon eguin içan dela? Jinco guiçon houra hiliçan dela khurutchen guiñen guiçonen salbatceco? hiletaric phizturic cerialat igaiñ cela, noun beitago bere aitaren alde escuiñian eta nountic harçara jinen beita mundiaren jujatcera? sinhetsi duta badela dohatçutarçunezco bicitce bat, erran nahi beita *Paradusu bat*, hounentaco, J-Kristen eracouspener jarraiki diratekienentaco, hala nouna bethi ere sofritceco lekhu bat, erran nahi beita *Ifernubat*, noun Jincöa Jinco deno, gaistoac, mundiari jarraiki diratekianac, behin ere erre urhentu gabe chispilt-

con arico beitira? Eguia lazgarri beçaiñ handi diren hoyec sinhetsi dututa? Eta sinheste horren arabera bici içan niça?

O Maria! Çoure medioz ukhen deçadala çoure fedetic phartebat, houra içan beitcen çoure berthutiaren fondamena. Çoureki batian ukhen deçadala fedia, ene sinheste azcar eta hounac eman deçadan esparantça, eta Jincoa maita eraz deçaden haren ganic ugurukitcen dutudan hountarçunec! O Maria! Jardiets eçadaçu, othoi, berthute hori, orotaco nesesarioena.

« Birjina leal eta fidela! gouretçat » othoitce eguiçu. »

« Contritcionezco acte bat fediaren » contre egnin bekhatiez, *Paterbat*, » hamar *ave Maria* eta *Gloria* fede az» car baten galthatceco. »



ÇORTÇIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Incarnazionia.

« *Noun edo certan ere beitugu amorio, hanguira bihotcez: maite badugu Jincöa, gogoz hareki guirate.* »

Bere baimentöa eman du Mariac Jaunaren nescato dena Jincöaren ama içan nahi da. Haiñ sarri; *Berbo eternalaç* khorpitz bat hartcen du eta guiçonen artian dago. Jakin gabe cer darbilan, mundiac miracullu hori borogatcen du. Cerbait noun bait hadela uduritcen çaie jenter. Istoriak dio; baztercaturik ciren judiöac, utçuli cirela Jerusalemerat. Azkenez beste Paganöac ere jarri ciren phentsamentuçan. Asmatu beharrez ciren couin erregue ganic, couiñ familia handitaric elkhiren cen mundia salbatu beharciana. Oroc ikhoussi nahi çukien erregue berri mundia berritu beharciana. Beha ciren noun bathuren, oien *Mesia* hitcemana. Mariaren etchano

umila bera da nihouri ohartcen etçaiona.

Nic aldiz, segurtantcha orotan, badakit altharian dagöela Jesus, bena eniz hourac ciren beçaiñ suhar haren ediren beharrez. Guiçonengatic amorioz guiçon eguin içanda: orano orai ere amoriöac etchekiten du sacramentu saintian, goure contsolatceco aholcatceco eta, haboro dena, goure arimen hazteco, nahiz, hounki ecinago handi horren ordari, eztiangoure eretcetic ikhousten ezachoitarçun, eskergaisto eta laido baicic. Han, ohiduru dago nouiz bisitaturen dugun, nouiz errecebituren dugun. Eta ni aldiz ahatcerik han dela! oro estacuru haren gana ez hulantceco, haren ez errecebitceco, edo hobeki erraiteco ez achoitarçunac hurturic. Bisitatcen balin badut ere, noula nago haren aitcinian? Errecebitcen badut ere, çoumbat nahi bekhan; noula adelatcen niz comuniatcera? Cer ekhoizpen idokitcen dut comunionetic? Elas! ecin haboro egonez; erran ahal niro, bortchaz beçala deliberaturic guerokos, ene Jinco Jaunaren khorpitça errecebitcen dut debocionevic, goçoric, ganorik gabe; ere

sutan eçari behar nuundukian janhari miraculluzco horrec uzten nai ohi beçaiñ hotz, ohi beçain flaco eta erorcor. Cer hounki eguiten ahal dero khorpitçari apetitu gabe eta desgoustureki hartcen den hazcurriac?

O Maria! aithor diçut; ez achol içan nuçu comuniatceco behar nukian beçaiñ ardura, eta eguin dudanetan, aldiz noula nahi eguin diçut. Azcarren oguia janic flaco baratu baniz ere, nihaurec diçut oguena. Eznuçu preparatu comuniatcera behar liçatekian beçala, eta ondotic eztiçut jakin ukhen, eskor hounac emanez, eskietan edukiten nian tresoraren balieraztean. Ama houna! phitz eçaçu nitan ardura comuniatceco desira; bena huiñ bultsa eracats eçadaçu aitoinetic eta ondotic cer eguin behar dudan comunioniaz baliatceco.

« Paregabeki Jesus maitatu duçuna
» gouretçat othoitce eguiçu.

» Contritcionezco acte bat comunio-
» netan eguin butsez, *Paterbat*, hamar
» *ave Maria* eta *Gloria*, behin, dig-
» noki comuniatceco graciaren galt-
» hatceco. »

## BEDERATÇUGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

### Bisitacionia.

*« Nola maite dianac haren haurrac » maita dutu, halaber eztiroqu Jincoa » maita proximo laguna maitatu gabe.*

Estçaio Mariari, cer eci sobera, ez aski ere Jincoari esker emaiteco egunetic eguniala haren hobeki cerbutchatcia eta maitatcia. Jinco arraerosliaren ama içan behar dialacoz, bere seme dibinoareki phartelient içan nahi da arimen salbamentian. Ainguriac anontçatu deronian Jincoac bere semiaren amatsco haitatu diala, erran dere; Elisabet, haren cosia, nahi bada cahartuaric, occupaturic dela seme batez; Haur houra, bere aitcinian igor guei diana, santificatu nahi diala Jesusec; amaren sabelian delaric. Berantu gabe, nahi bada egon ahal çatekian, men-

dier gainti eta lehia handitan abiatcen da Maria, dio Ebandjelioac, bere cosiaren bisitatcera, lehen benò lehen conpli ditian Jesusec familia saintu hari eguin guei deitçon favoriac. Horra caritatiaren indarra! Bidajiaren luciac ez gaitçac, herheciki emaztebatentaco, guibeltcen eztiana.

O Maria! Çoure eguitate ederrac eracasten dereitaçu eguiazco debocioniaren lehen frutia dela, jincòaren beçala proximòaren maitatcia, caritatezco obraric gabe ezguirela salbatcen ahal. Jincòac manhatcen ditadaçu, proximòa maita deçadan noure buria beçala; erran nahi beita ezterodala eguin ez desiratu behar nihaurentaco nahi enukianic, eta bai aldiz nihauri ountsa jin lekiztadanac oro. Halere ni bethi guibel proximòari hounki eguiteco: cer diot: ni bethi sobera aiher hari oguen eguitera, hountarçunetan ecic ere, ohorian eta faman. Ecinago minbera nuçu bestec aiphatcen nai enian, eta nic aldiz bestiac noula nahi erabilten ditiçut. Eguiçu, ô Birjina saintia! ene caritatia içan dadin, çouria beçala, eguiazco, hedatu eta

ente. Proximoaren contre aguertceco eta mintçatceco lekhuan, haren althe elkhi nadin, laguntceco, defendatceco eta escusatceco dudalaric. Hebentic aitcina, jincoa gatic, proximoa nahi diçut eguiazki maitatu; berheciki jincoaren desgracian daudianac, hentçat othoitce eguinen diçut, amorecatic, eternitatian, goureki eta dohatsieki, jincoa maita ahal deçadan.

« Maria misericordiaren ama gouretçat othoitce eguiçu. Contricionezco acte bat caritatiaren contre eguin hutsez; *Paterbat*, hamar *ave Maria* eta *Gloria*, behin, caritatiaren galthatceco. »



## HAMABORTGARREN EGUNECO MEDITACIONIA.

### Bisitacionia.

« *Lilien urrina harlcen du airiac;*
» *saintieki içatez, saintulcen dira gui-*
» *çonac.* »

Berre cosiareki igaran çutian elhez, Mariac eracasten deicu noula behar dugun goure laguneki elhestatu. Elisabeten aitciniala heltu den beçain sarri, emazte sainta harec eçagutcen du salbaçaliaren *Ama*, jincoaren miracullus sabelian cian haurra iguitu eta çotucatu beitcen. Elisabetec felicitatcen du Maria ceren içan den Jincoaren *Amataco* haitatia. Mariac ere bere aldetic felicitatcen du Elisabet ceren den Ama semebaten çouiñec salbaçalia mundiari anontçaturen beitu. Complimentuzco elhe auherriceztie igaraiten eguiaz eta bihotcetic algarri mincatcen dira. Jincoa biec erremestiatcen die bat bederari eguin deitçon graciez; eta guisa horrez algar animatcen die Jaunaren maitatcera.

Counbat aldiz elhe houneen entçutiari, eztut nic ere eçagutu ene bihotça

hounkiric, debocioniaren goustia nitan phiztea, eta munduco banitate eta ezdeuskeriena flacatcea. Eta halere soberatan baicic eztutut preferatu conbersacione inutil eta arhinac çouintan caritatia eta berthute maitagarria gutiz haboroetan colpatcen beitira. Ere hen ondotic ene bihotça eta ene gogoa nahasiric eta barreaturic baratu dutuçu, guisa batez noun, debocioneric gabe aguitu beiniz ene othoitcetan eta herabeztiago ene arimaco eguinbiden eguiteco. O Maria! emadaçu, othoi, debocioniaren eta debocionezco elhen goustia eta amoriña. Goustu hori dien persounen compaña maitha eraz eçadaçu. halaber huguteraz eçadatçu banitatezco, ezdeuskeriazco eta arhinkeriazco elhiac. Escutic, haurbat beçala, guida neçaçu; Birjina photeretsia! emhelegua eraizten dereiztatçudalaric ene intres izpiritualac.

« Birjina photeretsia gonretçat ot-
» hoitce eguiçu. »

« Contricionezco acte bat conbersa-
» cionetan eguin hutsez. *Paterbat*.
» hamar *Ave Maria* eta *Gloria* etc. El-
» hetiounen amorioaren gallhateco. »



HAMECAGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Bisitacionia.

« *Benedicione bat da familietan* » *arima debot bat.* »

Hiru hilabetez egon cen Maria Elisabeten etchean. Cer exemplu hounac etceitcen eman han ibiltçale orori? Umilki eta gogo hounez lanic gaitcenetan ari cen. Bai: Maria, creaturaric perfeitena, becatu placaod haliatu ceron Elisabeti, berthute guciac praticatcen çutialaric ber denboran. Hainbat cen erne, orhitu eta arrahent, nonahi orotara helteen haitcen. Here eztitarçunaz eta arriertarçunaz, animatcen eta contsolatcen çutian hareki eguiteco cienac oro; exemplu houna emaiten cerelaric. Haren beguitharte arrier, bena modestac ber denboran, eçagutcera emaiten ceren orori, eztela contcenteia chahiaren bakia beçalacoric; hala nola eztela deus hain eztiric ez

geçoric noula Jincoaren cerbutchatcia eta haren peco osoki içatia.

Cer bakia, cer içate houna, beiliçateke familietan, Maria beçala, bathedera arrahent baliz bere eguinbidetan, umil nahigabetan eta lagunentaco houn. Noula algar lagunt liroen Khiristiec eta algar contsola! Noula, algar, egarten dielaric, unionian liratekian!

Nic, aldiz, eniaz erraitera, cer eguiten dut? Ez echolki eta arduran mourmoucicatcez baicic eztut lanic eguiten, eta halere ouste dut sobera eguiten dudala. Bestetçaz bethi behhaitz niz, ni beno hobeki direlaco oustekerian. Bethi beha niz noun cer ediretenen dudan hetan erraitecoric; eta azki lan dut ene lagunen huts ororen craikitia eta theric gabe hen thurmentatcia.

O Maria, ô ama houna! Khanbia eçaçu ene bihotça; ukhen eraz eçadatçu, familien içate houna eguiten dien berthutiac. Bakezco aingurubat içan ahal nadila noure jenten artian! Ene ezetcetic eztadin içan hoboro discordia edo aharra bideric! Ene arrahentarçun, umilitate eta arrietarçu-

naz ororen bihotçac ediren eta irabaz detçadan !

« O Birjina *Boztariozcoa*, gouretçat » othoitce eguiçu. Contricionezco actia » pharcamentu galthatceco. *Paterbat*, » hamar *Ave Maria* eta behin *Gloria*, » khanbiatceco graciaren galthatceco.»





## HAMABIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Josefen antsia.

« *Dohatsu dirade Jincoari fidaturic* » *sofritcen dienac, eci içanen dira* » *contsolatiac.* »

MARIA, compliturie Elisabet, bere cosiaren eretcian, caritatiac mahantcen dutian eguinbidiac, utçultcen da bere espousa ganat. Ordian lehentce Josefec eçagutu ukhen cian bere emaztiaren estatia (ocupatia cela) : eci Jincoac (berac zakian cergatic) iñoratcera utci ceron Marian guerthatu cen kanbioa.. Cer bihotz mina guiçon saintu hartan, jakin gabian cer çabilan ! cer pheutsamentu kharatsac eta icigarriac etciren igaran haren gogoan ? Biec boto eguin cien *Birjina* egoiteco. Mariac hautse othe du boto hori ? Arima chahu pare gabe houra aski desditchatu aguitu othe da infidel guerthatzeco ? Ecin sinhets diro Josefec ; bena ikhou-

siac ikhousiric bortchatu beçala da gaizki jujatcera. Senharra plañitzen balin bada, Maria, chahu izanic ere, harricaldustaturic hilen da, leguiac hala nahi beitu. Antsia pare gabia! Cer eguinen du Josefec? Cer eguiten du Mariac? hitz bakhoitz batez bere buria chahatcen ahal du. Josef ezta gaizki jujatcera lehiatcen. Eztero nahi emaztiari fama galeraci, eta ohi beçaiñ caritatouski eta conplasenki tratatcen du. Maria aldiz, justificatcen ahal liçatekialaric, ichilic dago Jincoatan umilki contsolatcen, da Josefen eretcian ceren infidel antço igaraiten ahal den Esparantça du *Probidenciac* chouriturren diala eta haren espousa arguituren.

Ni aldiz, çounbat jujamentu temetarioz eta suspetcione injustoz eniz oguendun, Maria eta Josef beçain prudent içan gabez. Josefec enthelegatcen çian ountsa Izpiritu saintiaren errana: « garrazki jujaturic içanen dela proximöa garrazki jujaturen diana, eta pharcuric gabe condenaturic datekiala lagunak arhinzki condenatu dutukiana. » Eguia handi eta lazgarri hori

nakialaric, çounbatetan eztut proximoa gaizki jujatu eta arhinzki condenatu? çounbatetan eztutut haren intentcioniac gaizki suspeitatu, haren obretan erraitecoric ecin edireiten nianian? Nihaur aldiz bestec acusatcen edo suspeitatcen banaie, lekhia eman dukedalaric, Maria beçala ichilic egon beharric, pacentcia hartzeco lekhutan gaizten niz, ecin pharcatzen dut; eztut hounic noun eniçan justificatu edo mendeçatu.

O Maria! o Josef! cier nago hebentic aitcina ene jujamentietan çuhurrago, eta ene nahi gabetan erresinatiago içateko. Begui hobez hebentic aitcina nahi derot proximoari soguin; eta nihaur gaizki salduric aguitcen baniz ere umilki eta susmisionereki pharaturen niz.

« O Maria, bihotcez Jesus uduri cire-
« na!, goureţçat othoitce eguiçu, Con-
» tricionezco actebat jujamentu gais-
» toez, eta *Paterbat*, hamar *Ave Ma-*
» *ria* eta behin; *Gloria*, corrijitzeco
» graciaren galthatceco. »





## HAMAHIROURGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Aingurubatec trankilisatzen du Josef.

« *Jincöatan bere confidantcha eçar-*
» *ten diana ezta gaiski helturen.* »

ERRESINATURIC eta etsi etsia Josefec deliberatcen du Mariaren ichilic igórtia haren berthutia ecin suspeitatuz, bena ber demboran haren estatia ecin justificatuz. Arte hortan Maria ichilic çagoen, fidaturic Jincoac, behar ordian, eguia çabalturen ciala, hartacoz miracullubat eguinen bacian erc. Ere jincoari egonez, etcen gaizki heltu. Gaibatez aingurubat aguertcen çaio Josefi lotaric, eta erraiten deio: Josef Dabiten semia, beldurric gabe bici cite çoure emaztiareki; Izpiritu saintiaren obra da, sorthuren eta orai sabelian dian, haurra. Haur harec arrerosiren dutu bere populiaren bekhatiac, eta Jesus (erran nahi beita salbaçale) duke

icena. Aspaldi danic Profetac erran cian içanen cela orai guerthatcen dena. Hori erranic galdu cen ainguria, eta Josefi bihotça largatu eta descantsatu ceron. Maria, igorteco lekhutan, ohi beno begui hobez ikhousi cian hantic aitcina. Anhartian bere berthuten gatic maite ukhen cïana, gueroztic errespetatu eta ohoratu cian salbaçaliaren ama maitia beçala.

Nic ere, nour baniz, jincoatan confidantcha ukhen behardut, eta ene buria haren eskietan osoki eçari. Eztuta segurtantcha, jinco houna deitcen dugunac eztutiala bere cerbutchiariac ahazten behar ordietan? Eztakita cehaturic ere çouiñ aldiz, celietan dudan aitac esku batez eguin çauriak bestiaz sendotcen dutiala? Josefen eta Mariaren exenpliac aski goratic erraiten du.

Bena hortacoz, çuc, Ama houna! o Maria! berma neçaçu esprabu orotan; guida neçaçu, arguitcen naiçularic; contsola neçaçu azcartcen naiçularic; guisa batez noun, Jincoaren probidentciari nagoelaric bethi, gogotic egar deçadan khurutchia, çouiñ gabe ezpeita guiçonen salbamenturic.

« Erien osagarria cirena, Maria gou-
» retçat othoitce eguiçu.

« Contricionezco actebat esprabietan
» eguin hutsentaco ; *Paterbat*, hamar
» *ave Maria*, eta *Gloria* etc. hetçaz ho-
» beki baliatzeco. »





## HAMALAURGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Salbaçaliaren sortcia.

« *Hain neke da aberastarçunen amoriöareki celıan sartcia, noula beita kameliari orratçaren chilotic igaraitia.* »

Bost egun ederric eta hounic goçatu cien alkharreki bi espous saintiec. Bethi gogoan cien salbaçaliaren sortcia, harez bethi mintço ciren. Enperadoriari ohartcen çaio jakin behardiala çounbat diren haren manuspeneco jentiac. Manhatcen du oroc eta batbederac bere icenac izkiribus har eraz detcen, nourc bere sorherrietan edo hirietan. Mariari eta Josefi jouan behartcen, çaie Betleemera, noun biac sorthu beitciren. Maria, deu beçala ocupaturic, esta sobera estatutan bidiari lotceco. Erresoursaric gabe dira bidaje luce haren bere guisan eguiteco. Halere

badoatça Dabit erreguEren arrahaurrac houinca eta ahal beçala. Uñhaturic eta akiturik, heltcen dira nouizbait Betleemera, bena contsolu bideric gabe. Hirian eztiroe lekhuric khausi, buria noun sar. Ecin bestilaturic eta aröaren garratçac lotsaturic, hiri buru batetic bestiala badabiltça etchez etche, bere adiskide eta eçagun çaharrer ostatu galthatcez. Agueri da, beharrac direla, bena halere edo eztere ihardesten edo ez eçagutiarena eguiten dere, eta orotan borthac cerratzen deitce. 'Guerocóz etsituric eta azken harietaraturic sartcen tie bere buriac, aice guciac iraciz paseatcen diren borda çarbatian, noun hain sarri Mariac sortcen beitu *Jesus*, mundiac antsiareki ugurukiten dian *salbaçalia*.

Cer erran behar dut, nic, ikhousiric hen obedientcia eta erresinacione umila, nic, bai nic, nihouren manuspeneco içan nahi enintçatekianac? Erranen duta, urgaitci nuntukiala Betleemen heltu içan baniz? Bostariorekí batcera aguerturen nintçaiela? Gogo hounez cerbutchaturen nuntiala eta enerela deus gorderen? Bena hola er-

ranez eguia erran niroa? Ez othe nintçan Betleemarac beçaiñ gogor içanen? Heç Mariari eta Josefi beno haboro khountu eguiten duta prauber? Dakidalaric beharrer emaiten dianac Jincoari emaiten diala, hentaco gaisto dena harentaco gaisto dela, ez othe niz Betleemarrac beçala bihotz gabe içan? Eta etcen aski deus gabe utzi nintzan beharrac, ezdututa igorri mesperetchureki eta ezker gaistoareki?

O Maria, aithordiçut, Jesusec, ordarian ari nahi baliz, erran ahal litcirodala azken egunian: gose nundia eta ezteita dac eman nahi ukhen jatera, egarri nundia eta ezteitadac emanedatera; arrotz nundia eta enaic alojatu, piccarrai nundia eta enaic beztitu; esker gaistoareki utzi eta igorri ukhen naic; beharrer hala eguin dianian nihauri eguin ukhen beituc, habil maradicatia; nic ere orai ehait ikhoussi nahi; habil ifernuco suian bethicoz erratcera. Beguira neçaçu sententcia hortaric, Maria! hebentic aitcina enuçu haiñ gogor içanen praubentaco, ounxa harturen ditiçut eta ene eguin

ahalaz urgaitciren amorioreki, orhituric her eguiten çaiena, Jesusi berari eguiten çaiola. Guisa horrez misericordious içanez, nihaurec ere misericordia edirenen diçut Jincoaren eretcian.

« Goure creaçaliaren Ama, gouret-
» çat othoitce eguiçu. »

« Contricionezco actebat, gogorre-
» gui içanez doluz; *Paterbat*, hamar
» *Ave Maria* eta behin *Gloria*, hobe
» içateco borontatiareki. »





## HAMABOSTGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Jesus mandjateran...

*« Saintutarçunialaco bideric hobe- » na da munduco hountarçunen ez- » aqholeria. »*

Goacen gogoz Mariac bere semia sorthu cian barrukiala. Celu lurren erreguia kuña ederbatian içan beharra mandjatera batian etçanic bathuren dugu. Lastoa du ohetaco. Piltçar batçuetan troçaturic da. Cabale batçu dutu bere lagunac; bena guiçonac beno hobeki baliatcen caitço, bere hatsaz berotcen beitie. Çu erè han cira, Maria, çoure espous saintiareki, deus gabe cira, eta halere mundian diren aberatsenac beno aberatsago cira, duçulacoz tresorbat mundiac inbidiatcen leikeçuna. Çoure gabecian jincoa benedicatcen duçu; eztuçunic eztuçu cudiciatcen. Çoure arrancura oro duçu, noula

çoure amorio eta balakiez contsolaturen duçun, bere nahiz praube sorthu den semia.

Bai, praube huts, deus gabe sorthu nahi içan da, mundiaren jabe dena, hitz bat bera erran lukian eta palacioric ederrena ukhen çukian, eta hareki mundu hountan desiratcen ahal diren eztilarçun guciac. Cergatic aphalmentu hori haitatu du Jesus maitiac? Gouri eracasteco oguen dugula, ouste dugunian mundu hountaco hountarçunetan edireiten dela içate houna; aberatsac beno hobeki direla praubiac, izpirituz eta ideaz praube balin badira, Jincoac eçari dutian heñian content badira, pacenciareki eta susmisionereki bere gabecian bici balin badira.

Praube baniz arren, ô Maria! maithatu behar diçut praubecia, çuc eta Jesusec, cien exempliaz maithatu eta ohoratu ducien beçala. Ene antsia oro içan dadila beraz, ez aberastia, ez hountarçun biltcia (horic oro egun batez utci eta galdu beharrac dira) bena eternitatiaren irabaztia, ceren hartan baicic ezpeititake ediren ouhouiñec ecin eramaiten dien tresora.

« Gourre salbaçaliaren ama gouretçat
» othoitce eguiçu.

» Contricionezco actebat gabecia
» pheretchatu gabez; *Paterbat*, hamar
» *Ave Maria* eta *Gloria* behin, prau-
» beciaren amorioaren galthatceco. »





HAMASEIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Ohico sujeta.

« *O ene populu maitia! Certan hutz*
» *eguin derat ene ganic hola hurrunt-*
» *ceco.* »

MARIA amaric hobena baicic etcen içaten ahal. Ere, Jincoaren borontatiari umilki pharatcen celaric, bihotça erdiratcen ceron bere semia, cen estatu tristian nahi beçala eein sokhorrituz. Bena cerc ere bihotça lazkienic çaurtcen beitceron, hau cen; ikhousten cian guiçonec, eztakielaric cer eguin munduco handien eta aberatsen aski ohoratzeco, balio gabez uzten ciela Jesus, celu lurren *Erregura*. Mundu gucia nahi çukian ikhousi, bera beçala, amorioreki eta umilki Jinco aphaltu haren lrouiñetan. Hanitchco igaraiten ciren haren khantian, bena ez bat baratceh haren ikhousteco. Guerocoz hirour arrotz aguertcen dira; hirour

Printce hurruntic jinac Erregue berriaren adoratcera. Aſagueratu ceron balinba bihotça Mariari, ikhousiric bere aberastarçunac Jesusi ofritcen cereitcela eta ber denboran bere bihotçacere. Printce hayer juntatu içan cen, hen dohaiñen ounharterazteco. Ordian cían ouhtsa enthelegatu, graciac guidatcen eztiana eztela digno Jesusi batceco.

Handizki utsutiac ciren Judioac, hain hullan ikhen eta, bere salbaçalia, etcirenian haren presentciaz baliatcen. Jakin gabiac ouhtsa cer cen misterio houra chipitcen du, behar bada, hen oguena. Hala hala erran daitekia gutçaz, çouiñec, dakigularic ber Jinçoa elicetan khausitçen dela, Eliçac hutsic uzten beitutugu. Nouiz nahi aisina dugu chostacatceco, ez deuskerian, auherkerian, denboraren galtceco, eta eztirogu arteric ediren Jesusen bere sacramentian bisitatceco. Auherretan han dago aiduru, bere gracia eta aholku hounez contsolatu eta arguitu nahiz; uduri dugu, guc, haren ondoan ibili beharrac, ihes eguiten derogula haren dei eztier ibardesteco lekhutan.

Maria, ama houna, çoure othoitce hounez sendo neçaçu utsumentu hortaric. Çoureki batian deliberoa hartcen diçut sacramentu saintiaren ahal du danetan bisitatceco; amorecatic eta, Jesusi ardura hullantuz, haren amorioa bihotcian phitz dakidan eta haren bethi cerbutchatcera ekharriric içan nadin.

« Debocionezco ountci pare gabia,
» gouretçat othoitce eguiçu. Contri-
» cionezco actebat sacramentu saintia-
» rentaco ez achol içanez, *Paterbat*,
» hamar *Ave Maria*: eta behin *Gloria*
» eta hebentic aitcina bestelaco iça-
» tece. »





## HAMARÇAZPIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

### Purificacionia.

» *Emacu aitcina, cerbutchari houn*
» *eta fidela, ohi beçala eguitçu ene*
» *manuric chipienac.* »

Legue çaharren arabera emazte emerri guciec presentatu behar cien templuan, haur [illegible] [illegible] ceien thenatic purificaturic içateco. Maria miracülluz, erran nahi beita Izpiritu saintiaren obraz, amatu cen, eta legue horrec etcian hounkitcen. Halere eztu dudatcen beste emaztec beçala eguitia. Escusa liçatekialaric, leguia conplituco du. Thonaturic etchekiten dutienen artian aguerturen da, hourac uduri baliz beçala. Berroguei egunez eztà temploan sartcen, ugurukitcen du *Purificacioniaren* denbora betha dadin. Ordian irouaiten du Jesus Jerusalemera, Jincoari haren ofritceco. Horra noula-



HEREÇORTCIGUERREN EGURECO MEDITACIONIA.

Purificacionia.

« *Eztitake bi naussi cerbutcha. Jin-*
» *cöa edo mundia, çouin naki dia?*
» *haita eçac khiristia.* »

MARIAC eracasten deicu Purificacionian noula, gogotic eta erreserburic gabe, obedient içan behar dugun. Umilitatiaren exenplia eta errenonteiamenturic handienarena emaiten deicu, gordez bere birjinitatia, saintutarçuna eta Jincöaren ama calitatia. Bena misterio hortan beste berthuteric ere aguertcen du, bere semiaren ofritcian eta arrerostian, hala noula anontçatcen deitcenian seme haren eretöetic guerthaturen çaitçon esprabiac. Baçakian Mariac bere bicia eman behar ciala Jesusec guiçonen salbatceco; ordian danic bictimataco ofriteen du. Ordian danic çaurtcen da, guero Pas-

sione denboran doloresco ezpatabatec igaran cian bihotz houra. Seme bakhoitz baten ama cen, seme houra sorthu berri, haren goçatcen hassi baicic etcen ama. Seme houra Jincocen, eta halere ofritcen dian egunian, eguin behartcen çaïo sacrificiobat, guerochiago calbarioan baicic urhenturen eztena. Bere bihotça ichilerazten du, eta, oberenda batez arrerosten dialaric bere semia Aphez handiaren eskietaric, ezta gutiago desolatcen, orhituric eztiala egun batez hala hala idokiren ahal bere bourreuen aztaparretaric.

Enthelegatcen dut, eta ez nekez, çounbat dolorous içan cen ama houn haren içatia, eta cucen hounez Eliçac deitcen diala *Martiren Erreguiña*. Martiren sofricariec eztie haboroeneticere çounbait egun baicic iraiñ. Mariarenec iraiñ die hoguei eta hamahirour ourthe. Bethi, Coatino, orhitcen ceitçon Jesusec passionian sofritu behar çutian turmentiac, eta tenploan eguin cian lehen sacrificioa momento guciez berrit behartcen çaïon. Eta nic aldiz eztakit den sacrificioric chipienaren eguiten. Pretenditcen duke sofritu

gabe celiala helcia ene passione eta inclinacione gaistöac satisfatcen dutudalaric, eta eztut corajeric galeraci behar naien estecamentietaric escantsatceco.

Esker deiçut, Ama houna, çoure eracouspenez. Baiñba çoure exenpliec phitzeraciren naie. Bena, othoi, balia çakitçat, indarra ukhen deçadan noure buriaren garhaitceco, Jincoaren amorecatic, egun oroz igaran behar dutukedan guduketan. Mundu houni hersiric beçala nuçu, Maria! Solta neçaçu, ene bihotza tincaturic edukiten dien estecamentu orotaric, amorecatic merechi deçadan, Jincoari oro sacrificatuz, celuco glorian içatia.

« Martiren erreguiña, gouretçat othoitce eguiçu. Contricionezco actebat, mundiari eta pasioner sobera » jarraikiz *Paterbat*, hamar *Ave Maria* eta *Gloria*, contriaren galthatceco. »





## HEMERETZUGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Jesus bortchatu da ihes equitera.

« *Arima gaistöac erran du*: ezta Jin-
» corie, *eta ezpaliz beçala gaistoko-*
» *riari eman da.* »

Laster conplitcen hasi cen Simeon, guiçon çaharraren errana. Hastera doatça Mariaren antsiak. Aingurubatec abertitcen du Josef, herodésec haurra galeraci nahi diala. Bortchatu da familia saintia lekhu equitèra, nahi ezpadu utci Jesus guiçon gaisto haren eskietarat. Cer hersturan etcen aguitu Mariaren bihotça, ikhousiric here haur dibinöa, sorthu beçain sarri, gaizki chercaturic cela. Heródes crudela! Ihes eraguin deroc hire Jincoari. Anbicione gaistoac erabilaric, ouste ukhen duc celiari buhurtcen ahal hintçala, Jincoa ere garhaituren hiala! Certan içan hiz hil ondöan, Jujetaco

atceman diamian, galeraci beharrez lastercatu hian haur inocenta.

Cer oguen eguin cien guiconer Jesusec eta Mariac, gaizki hola tratatuzic içateco? Al abeitiz'a bihotçaren hounkigarri eguin ceitcen bidegabiac! Bena hourac beno laidogarriago da herodes, ceren den haiñ utsutuki bere errabiari behatu. Cer diot! Ene estatia gutiago deithoragarri dea? Eztuta nic ere, harec beçala, Jincöa galeraci nitan den beçanbat, bekhatia bihotcian sartcera utci dudanetan? Demoniöac eta pasione gaistöec utsuturic enian hounic ikhousten ene inclinacione çarrac satisfatuz baicic. Eta nahi bada ene contcenteiac bere oihiez, nahi bada Jincöac bere inspiracionez eta bere ministröen ahoz erraiten ceitaden jarraiki nandin Jaunaren leguiari; eta bekhatiari, herioari beçala, ihes eguin neçan, cer eguin dut? Erran banero beçala Jincöari: etçutut eçagutcen, enitçaitçu behatcen, etçutut cerbutchaturen; houiñ petan eçari dutut inspiracione hounac, itho dut contcentciaren oihia ene inclinacioner jarraikiteco. Herodesec J. Krist hil eraci nahi

ukhen cien, bera baratu nahiz Judiöen erregue bakhoitza: nic ère noula nahi gobernatceco çucena ukhen nahiz, Jincöari, eciu galeraciz, buhurtu nitçaio; eta ene bihotcetic ohiltu dut. Ugurukiren duta, herodesec beçala, beguien idekitceco, heriöa jin dakidan erraitera, mesperetchatu dudan Jinco haren aitciniala aguertu behar dudala, harec berac jujaturic içateco? Ez. Nour baniz, ordu deno conbertituren niz.

O Maria! O amá houna, burutic gainti bekhatúz cargatia nuçu. Balia çakitçat, othoi. Lagazkiegun Jincöaren etsai içan nucu. Merechii banu beçala, haren haur içan nahi nunduke̜çu orano ere, ahal niçanaz gueroz. Ordu deno Jesusen eretcian balia çakitçat, bakia eraguin eçadacu hareki; haren aitcinian aguerturen niçanian, bath deçadan ez juje garratz bat, bena ountsa hartüren naian adiskide houn bat.

« Khiristien sokhorria othoitce eguiçu gouretçat. *Paterbat*, hamar *Ave Maria* eta *Gloria* bekhatiaren beltztarçunaren eçagutceco, eta guero contricionezco actebat. »



## HOGUEIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Jesusec ihes eguiten du.

*« Jincöa goureki den ber, nahi dena » içan bedi goure etsai. »*

JARRAIKI guitian Birjina miragarriari bere desterruzco lekhiala. Bere herritic, bere jentea ganic hurruntciac eztu troublatcen haren bihotça, hanbat beitu handi fedia. Ihesi jouan bada ere Ejiptorat, Jincöac hala nahi ukhen du. Abiatcen da confidantchareki, manhatu dianac lagunturen diala bidian, eta guero beitu ondöan ere urgaiteiren. Egunhz beno haboro gaïaz eztu lotsaric; ausarki badouatça, eta nahi bada eztakien noulaco diren ez jo behardien lurra, ez hance jentiac, beldurric gabe han sartcen eta egoiten dira, Jincöac beguia etchekiren derela bereki dien depot sacratiaren amorecatic. Badaki Mariac Ainguriec, carguia dien beçala, beguiratcen dutiala

Jincoaren nahiaren conplitceco baicic ibilten eztirenac.

Noulaz mundian beste guisaz dabila? cer gatic ikhousten dugu mundiaren artian hanbeste desordre eta estatu orotan hanbeste nahi gabe eta desgoustu? Jincoa contsultatu gabe eta bere buruz urhatsic inportantenac haboroec abiatcen dutielacoz. Couiñ nahi estaturen hartciaz, orai berian escontziaz içan dadila kestione? Cere erabilten dutu mundutar haboroec? Jincoaren borontatia eguin beharrac? Ez, hanbeste houn ere. Cere arren? Pasioniac eta interes tzarrac. Ere cer guerthatcen da arduran? Bicitce gaistoa ezcontien artian, nahaspilla familietan, miseria, desohoria mundu hountaco, eta ifernia besteco. Eta horiec oro, cergatic berriz ere? Jincoaren borontatiaz arrancuratu gabe, haren contre behar bada, houlaco edo halaco estatian sarthu guirelacoz, houlaco edo halaco eguiteco buruz abiatu guirelacoz. Jincoaren (plazeraz edo nahiaz) arrancurago baguina, Jincoac lagunt guintçazke behar ordian, Maria eta Josef eguin çutian beçala. Hala abiatu ga-

bez, guihauri eta bester hugungarri aguitcen guira.

O Maria! orai artian nihauren buria baicic ezpadut ere guidataco hartu, eguiçu çoureki batian erepara ditçadan ene herramentiac, eta hebentic aitcina ezteçadan deus abia, noun eniçan ahal beçanbat segurtatu, Jincoac nahi dukiala. Gaurgoiti ene urhats eta eguitate guciac jincoaren gogaraco içan ditiala, guisa horrez burutan jouanen beiniz ene eguitecoetan, celia merechitcen dudalaric, Jincoaren nahiaren eguler hitcemanic den beçala.

*Khiristien sokhorria, gourelçat othoitce eguiçu.*

« Contricionezco actebat, Jincoari » fidatu gabez. *Paterbat*, hamar *ave* » *Maria* eta *Gloria*, jincoari gogara » bethi eguin beharrez. »





## HOGUEI ETA BAT GUERRENECO MEDITACIONIA.

Jesusec urteh du joualtera bere ama.

*« Jincoa dianaç eztu deus falta, ha-*
*» reki dutialacoz hountarçun guciac. »*

HÉRODES hil içan cenian, etcherat ütçuli cen familia saintia, eta egunetic egunialiña çaharrago beçala çuhurrago eta mouldatsiago çouen Jesus. Bazcocari, usatu beçala, Jerusalemera jouan ciren Maria eta Josef. Jesus jarraiki cęien. Hamabi ourthe çulian ordian. Bestac ürhentu cirenian, Maria eta Josef Nazareterat ü'çultcera abiatu ciren. Egun baten bidia eguinic bacieu, ohartu cireneco etciela bereki haurra, çouiñ hen jakinic gabe baratu beitcen Jerusalemen. Hirour gai egunez tristeric egon cen Maria bere haurra gabe, eta ez haren berri galthatu gabe chehe chehia ikhoussi ahal ukhen çukien orori. Guerocoz e-diren cien Jerusalemeco tenploan, jarriric doctoren artian, her beha eta galthoz. Bere haurraren hala ikhoustiari, consolatu cen Maria eta boztu

ere bai ; ouste eta nahi gaberic galduric, Jesus ediren cialacoz Jincoaren intresec manhatzen cien beçala ocupatia.

Etcen laket Maria, deusi etceron eskerric, Jesus gabe. Nour baguira gu ere, nahi guirate Jesuseki bethi içan, gogoz berere. Eztugu bathuren adiskide maitagarriagoric, aholcaçale hoberic ez berme seguragoric. Bena nahi badugu Jesus bethi goureki ukhe, neztéçagun goure bekhatiez ohilt goure ganic, orhit guitian bethi haren ikhousbidetan guirela, eta guihaurec goure beguiez ikhousten bagunu beçala eguin deçagun, guisa horrez gogana bethi ieguinen beiterogu.

O Maria! eracats eçadaçu egunetic egunera Jesusen adiskidegoaren hanbatez hobeki pheretchatçen. Aski déseditchatu aguitcen banitz haren galtceco dohatmeneki eta lehiatuki haren cherkhatcen lagunt neçaçu, ediren deçadan haren ganic ez haboro jagoiti bercheztèco. Hartacoz, içan cite, othoi, cu, ene Jesusenkilaco unionearen orópiloa.

Alhiantçaraco arkha, goureteçat othoitzac eguiçu. « Contricionezco acte bat, eta guero *Paterbat*, hamar *ave* e'a *Gloria*.



HOGUEI ETA BIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

*« Mariaren bici erretiratia Nazareten.*

Socum deçogun Mariari bere Nazareteco etchian. Mundiareki eztu hantacioneric; Jincoa eta etchenco lanac baicic eztutu gogoan. Haren benia da Jesusen beraren guisa eguitia. Beha dago bere Jincotarçuna lurrian estalteen dian haur hari, Jinco Jaunaren ountsa beno hobeki cerbutchatcen ikhassi beharrez. Jesusen bicitciac deusec beno azcarkiago enthelegueraztem dero munduco ouhouren eta plazeren ezdeustarçuna, eta çounbatez hobe den erretiraturic eta mortificacionian bicitcia. Bere haurraren urhatsetaric eçagutcen du landjerous dela elkhiegui içatia; hobe dela mundiaz iñoraturic eta basterrerat utciric bicitcia, Jincoaz estimaturic içan guitian ber. Hala hala ikhousten du saintu içateco eztela aski esclatezco edo aguerizco debocionebati emanic icatia,

bena umilki eta jarraikiki Jincoari fidel içan behar dela. Ere fidelitate umil eta eztali horri da etchekitcen Maria, eta harec berac du saintutarçunian haiñ gora eraikiten.

Eracouspen ederra; Mariac emaiten deitadana! Jesusen escolan berac ikhassiric eracasten dereit bere exempliaz cer beguiz soguin behar dudan mundiari eta mundian pheretchatcen dutien abantaller. Ala beita haren bicitce ichil eta gordia ene bicitce herosti eta barreatiaren condenagarri! Eci eniça bortchatu aithortcera houra ezcapara beçaiñ ni mundiaren ondoan ibili içan niçala, nahiz eniçan egun dano behin chahu elkhi haren artetic? counbatetan noiire buria eracoutsi beharrez eniz mundian sarthu? Elas! cer irabaci dut? Hanbatez Jinco houna ganic hurruntcia, hanbatez debocioniaz desgoustatcia, hanbatez ene salbamentiaz ez acholtcia.

O ama houna! Jesusi soguiteco eta jarraikiteco lekhutan, mundiari ene damutan behatu nuçu. Hari agrada içan beharrez nekhatu nuçu, orhitu gabe mundiaren adiskide dena Jincoa-

ren etsai dela, eta Jesukristec erraiten deicula eztitçagun maitha ez mundia ez mundian direnac. Gaur goiti, çuc laguntcen naiçularic Maria, çoure semia eta çu ciratekie ene mouldia. Cier uduri içatera aplicatu nuçu. Ciec beçala nahi nuçu mundutic apart eta umilitatian bici, Jincoari, çor dudan beçala, fidel egoiteco.

« Urhezco etchia, gouretçat othoitce » eguiçu.

» Contricionezco actebat barreatu- » kiegui biciz. *Paterbat*, hamar *Ave* » *Maria* eta *Gloria*, erretirantcharen » amorioaren galthatzeco. »





## HOGUEI ETA HIROURGUERREN EGUNECO MEDITACIONEA.

Canaco esteiac.

« *Galtha eçacie eta emanic içanen* » *çaicie.* »

Hoguei eta hamar ourthez Mariac plazera ukhen cian Jesusen conpañaren goçatceco. Guerocoz jin ceron sâlbaçaliari denbora bere buriaren eçaguteraztecoa. Maria etceri egundano prebalitu Jincoaren ama içatiaz. Jesusi bere bidajetan jarraikitzen ceion, ez populiec emaiten ceitcen laidorioez hantzeco bena haren instrutcione hounez bere arimaren haztecо. Cânaco eztei batçuetara khumitaturic içan beiteen Jesus, Maria ere hetara asestitu içan cen. Han, amac beharturic, semiac eguin ukhen cian bere lehen miracullia. Estei hetan ardoua faltatcera jin cen. Nahi gabez espousac confu-

sionetan içan litian eta bere semiaren photeriari fidaz, Mariac eçaguterazten dero Jesusi jenté hen behar-unia. Erraiten dero : *ardouric eztie*. Eta nahi bada eztian uduri Jesusec khasu handiric eguiten diala amaren gomendiaz Mariac eztu etsitcen. Confidantchareki eta susmisionereki ugurukitcen du salbaçalac bere çuhurtçian eta hountarçunian eguinen diana. Hain sarri Jesusec houra khanbiatu cian ardouric hobeniala eta behar cen beçain cantitate handitan.

Badakit, ô Maria! Jincoari laket çaiola, hari goure behar ordietan fiersa guritian. Bena çuc Jesusi eguin cenecon othoitcetic eçagutcen dit, çer gatic ene galthoac bekhan entçunic diren. Çuc othoitu çunian ungururic gabe, confidantchareki, eta etçunian etsitu. Ere entçunic içan cinen. Nic, aldiz, Jincoa othoitcen dudanian, confidantcha escaz bateki behartcen dit, ene othoitcia eztuçu bethi bihotcetic eta ezpadut berhala galthatia ukheiten etsitcen dit, eta ardura aulherretan othoitce eguiten dit, eniçalacoz aitcinetic erresinatia Jincoaren borontatiari.

rous orano ezpanico behin ere galtha arimari conbeni dena baicic.

Ama houna, eracats ecadaçu othoitce houn eguiten.

Birjina bihotz houna, gouretçat othoitçe eguiçu.

« Contricionezco actebat, othoitce» tan eguin hutsentaco. *Paterbat*, hamar *Ave Maria* eta *Gloria*, othoitcen ikhasteco.





## HOGUEI ETA LAURGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

« *Otsöac nekez atcemanen dutu art-*
» *çainaren botzari jarraikiten diren*
» *ardiac.* »

Contsidera deçagun Maria, Jesus pheredicatcen ari den denboran, Cer bihotz mina etcen harentaco ikhoustia Judiöac haiñ guti baliatcen cirela haren pheredikiez. Auherretan bere instrutcioniac laguntcen dutu miracullurie handienez; hanbat dira utsutiac noun ezpeitira guti baicic conbertitzen. Eder betceitcen Jesusen elhiac eta ederrago eguiten çutian miracullìac, curiostarçunez jarraikitzen çaitçon, bena bere bihotzac cerratcen çutien haren instrutcioner; eta behatcen baciren ere haren elher, etçutien gutiago nausaz guero arraerabilten. Arte hartan Mariaren bihotça çaurtcen cen, eta Jesusec erraiten ceren Judioer galdiac cirela haiñ gogor cirelacoz.

Çounbatetan eztut Mariaren bihotz min hori berritu, noula nahi mintçatu niçanian, J-Kristen phartez, instruitu nahi nundien ministroez? Cer gatic hanbeste pheredicu entçun ondoan ehicoa bethi beratcenniz? Ceren eta bekhan baicic ezpeiniz behatcen baliatzeco gogoareki; ezpeitut Jincoari aitcinetic galthatcen Ebanjelioaren esplicacionez profeitatceco gracia. Pheredikier behatcen nizalacoz edo curiostarçunez, edo herabereki eta ecin escusatuz, saldoetan hetan igaraiten dudan denborari doluz; enetaco erranic liratèkianac bestentaco hartzen dutudalacoz, edo hounkitzen naielaric, noure beitharic gaizki hartcen beitutut, eta J.-Kristen ministroen erranac gaiskitara unguratcen edo nausatcen dutudalacoz.

O Maria! hounki eçaçu ene bihotz gogorra, beha nadin hebentic aitcina, baliatceco guisan, Jincoaren botzari. Eracats eçadaçu noula behardudan aitcinetic adelatu ene arimaren artçaiñari behatceco behin, eta guero lealki hari jarraikitceco. Çoureki batian, gaur goiti pheredikiac instrutcioniac gogoan

ounsa goititaco ditit, hen arauera guero gobernatzeco.

« Ceruco erreguiña, gouretçat ot-
» hoitce eguiçu.

» Contricionezco actebat instrutcio-
» nez baliatu gabez. *Paterbat*, hamar
» *Ave Maria* eta *Gloria*, hobeki ba-
» liatzeco hebentic aiteina. »





HOGUEI ETA BOSTGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Maria Kalbarioan.

« *Frututic eçagun da çuhaiña.* »

Hirour ourthez Mariac ikhousi cian bere beguiz çounbat sinhetskaitz ciren Judioac. Jin da gueroco tenoria çouintan ikhousiren beitu certaco nahi houn cirela bihotz gogor eta gaisto hourac. Aspaldi hartan Jesusen ecin galeracitz ciren. Guerocoz ukheiten die parada. Populu gaistobatec galthatcen du gaiski eguilebat beçala cruzificaturic içan dadin hounki baicic eguin etoèren salbaçalia. Maria jarraikitzea çaio calbarioala drano. Ikhousten du bere heriotceco tresnan gaiñeo hedatoèa eta itçatcen, eta khurutchetic odolez husten. Içaten ahal dea Ama harena içan cena beno bihotz min handiagoric: Eta halere, cerc. lazkiènic joiten du? Phentsatziac

hanichkorentçat auher içanen dela Jesusen hiltcia.

Eni baliaturen othe çait khurutchian Jincoari ofrituric içan cen odolezco sacrificioa? Enetçat auher othe dateke Jesusen hiltcia? Calbarioan aguitu cirenetaric pharte bourrenac ciren, çounbait curiositatez jouan ciren, besté çounbait bestec beçala eguitia gatic. Guti, hanitch guti, amorioz jarraiki ciren Jesusi, eta hourac berac deithuric dira Jesusen adiskidiac. Bestetaric guti santificatu ciren liburu saintien erraitera. Khurutcheco sacrificioa egun oroz berritcen da goure Elicetan meça erraiten denian. Cer gar dut meçaren entçuteco? Noula entçuten dut? Ez achol niça haren entçuteco? Entçuten dudanian nour uduri bis? Ene sendimentiac Mariaren eta Jesusen adiskidenac beçalaco direla eracousten dia ene debocioniac? Ala eniz meçala jouaiten bestec beçala eguiteco baicic? Judio indiferenten guisa federic gabe entçuten duta? Jesusen bourreuen pare haren nausatcera eta insultatcera jin niçala uduri duta ene egoiteco mouldetic? Nihaurec ikhous cer uguruki behar dudan Jesusen pa-

sionetic. Harritceco dut Judio indiferent edo gaistoèç eraçousi çutien ber sendimentuleki meçaco sacrificioa ikhousten balin badute.

O Maria! Erresolucionia hartcen dit çuharrago içateco hebentic aitcina meçaren entcuteco ahal beçainbat debotki. Ascart eçacu ene borontatia eta ene bihotcian debocionia phitzeraz.

« Dolorezco ama, goureтçat othoitze » eguiçu. Contricionezco actebat meça» ren entçutian eguin hutsez. *Paterbat*, » hamar *ave maria* eta *Gloria* meçaz » hobeki baliatceco. »





HOGOEI ETA SEIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

« *Hiltceco sortcen dira guiçon gu-*
» *ciac.* »

Jesus hil içan oenian, Josef Arimatéacouac eraitsi cian haren khorphitza khurutchetic eta Amari erremetitu ehortzeco. Cer nigarrac etçulian eguin Mariac bere seme hilaren khorpitz descaratiaren ikhoustiari? Bere dolorian, bekhatorer mintço celaric, erran cian: haur gaistoac ene semiaz gabetu naicie, nic maite niana galeraci ducie. Cer gaizki eguin ceicien? Cien haurrac sendoturic, cien hilac phitceraciric, hola çuniena behar tratatu? Etcen orducoz azki doloraturic, Mariac ikhoussi behar ukhen cian, esprabu suerte guciac ukhen litçan, bere haurra hobian eçarten.

Bekhatiaren gaztigutan Jincoac eman du hiltceco sententcia. Goure hiltcen urgaizteco hil içan da Jesus, nahiz etcian eguin bekhaturic. Inocenta, edo

oguen gabiá, haiñ garrazki tratatuŕic içan bada, ni noula içanen niz? Bekhatu eguiñ dut, gaztigaturic içan behar dut mundu hontan edo bestian hilen niz goiz edo berant, aguian laster. Hilen niçanian baliaturen othe çaitçat mundia eta munduco gaiçac? Ene khorpitza lurrian eçarico dic. Bena nouratco da ene arima? Aingurieki eta saintieki datekia Jesusen eta mariaren conpañian? Ala debrieki ifernuco su garretan? Hori ñiñaurek eguiñ behar dut.

O! Maria! çoureki batian saintuki hiltcen ahal nuçu. Saŕeraz eçaçu ene bihotzian, ahatceren eztudan beçala, hiltciaren orhitçapena, guisa harez ezpeitut bekhaturic eguiñen, eta mundu hountaric jouaiteco tenoria jin datekianian, Jesus hiltcen ikhousi çunian beçala, lagunt neçaçu ni ere. Coraja eta prepara neçaçu ene bethiereco içatia eguiñen dian urhats handi haren eguitera.

« Saintu gucien Erreguiña, gomet-
» çat othoitze eguiçu. Contricionezco
» actebat hiltcia orhit ukhen gabez. *Pa-*
» *terbat*, hamar *ave maria* eta *Gloria*
» hiltze hounbaten guithatceco. »

## HOGUEI ETA CAZPI GUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Jesusen phiztia eta celialat igaitia.

« *Burusan doua coraje duna, ahal-*
» *ketan baratcen da laçudena.* »

CER alegrantcia Mariarentaco, semia phizturic ikhoustian! Cer boztariòa ama harentaco ikhousiric Jesusec garhaitu diata heriòa! Botz da, beitaki etsaiec eztukiela hartan haboro escuric. Laster celialat utcultcecòa delacoz eta haren hobeki goçatu beharrez; eztu urhats baten eguitera uzten noun etçaion jarraikiten. Jouaiteco tenoria jin denian ikhousten dianian Jesus airian goititcen desiratcen luke hégalen ukheitia hareki airatceco, eta, ecin beste eguinez, gogoz eta bihotcez berere jarraikiten çaio. Oren houra muga eztu hounic mundu hountan Jesus gabe delacoz, eihartcen da, lehen bai lehen hareki içan beharrez; eta

dakialaric haren ganaco dela laster eta behincoz; luce çaio halere memento houra, beramt eticitcen du.

Ni ere deithuric niz egun batez celian içatera. Ni ere phizturen niz egun batez; eta, Jesusen guisa, phizten baniz bekhatia garhaituric, houra beçala celialat igaiñen niz. Nahi bada ene arima hilic den; bekhatian niçalacoz, eguiazki conbertitcen baniz saintu hilen niz eta glorious phizturen. Auherretan pasioneo, abitudа gaistöeo, mundiak eta debriak guibeltu nahi ukhenen naie. Nour baniz, Jesus eta Mariareki batian, oro garhaituren dutut. Bena hartacoz orai danic behardut aplicatu, eta gaur goiti ene ariman ez haboro utci sartcera bekhatiaren theiarçunic. Egun bat jinen da çouintan ene arima eta ene khorpitza algar gana berriz juntaturen beitira, eta, Mariac beçala, noure beguiz Jesus ikhousiren beitut. Aski dut nahi ukheitia. Eztuketa nahi? Bai, bai, nahi dut. Jincöac baletsa bihar liçatekian egun houra.

O Maria houna! Conbertitu nahi nuçu, bena flaco nuçu. Bekhatia hugu dit, bena enuçu gutiago beldur harçara

eror. Jincoa baicic eztit maithatu nahi, bena badakiçu counbat khanbiacor den ene bihotza. Çu, arren, ama houna! Egundano auherretan behartu etçutiena, halia çakitçat. Içan cite ene bermia eta indarra, inspira neçaçu; guida neçaçu; enetçat othoitze eguiçu; çu cira ene esparantcha.

« Maria, goure esparantcha, gouretçat othoitze eguiçu. Contricionezco acte bat, conbertitcia neglijatuz *Paterbat*, *hamar ave Maria* eta *Gloria* Conbertitceco graciaren galthatzeko. »





HOGUEI ETA ÇORTCIGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Izpiritu saintiaren jaistia.

« *Hountarçun thenporal gaizki igor-*
» *ria nekez da berriz biltcen. Jincöa-*
» *ren gracia, tresor orotan den precia-*
» *tiena, galduric ere, ehiñera cubera*
» *daiteke, eguiazki nahi bada.* »

JESUSEC hitzeman ceren Apostolier igorrico ceiela Izpiritu saintia. Gracia hartan phartelient içan nahiz eta hartara preparatceco, Maria Apostolieki erretiratu cen othoitze eguiteco, bere exenpliaz ezpeitcian balinba guti laguntu besten debocionia.

Aitcinetic ere graciaz betheric cen, bena beitaki Jincöac oro eman ondöan ere, badiala orano cer eman, ahal beçaiñ ountsa adelatcen da. Ere, fidel içan delacoz, graciaric abondantenac tourroustaca jaitsiren dira hartara, eta haren bihotz garbi eta saintia, etcen

jadanik aski suhat, hanitchez sutatiago aguitcen da.

Nic ere confirmacionian errecebitu dut Izpiritu saintia, Agueri direa nitan haren dohaiñac? Elas ! ez, ezpeinintçan, Maria beçala, adelatu. Sacramentu hortara hullantu nintçan debocionez beno haboro ceremoniaz. Houra errecebitu ondouan ohico bekhatietara laster utçuli niz eta haren frutiac galdu dutut. Salbatceco behar diren argui eta indar guciac emanic içan ceiztan, eta noure buria bortchatu nahi gabez hetçaz ez baliatu. Bekhatu eguinez itho dutut nitan Izpiritu saintiaren graciac. Guisa horrez nihaur, choil choila, guerthatu niz, landjerez unguraturic ene etsai gucier buruz ; eta niçan beçala flacoric garhaitu naie, ez nekez.

O Maria! aithor dit, eta badakiçu, aski preparatu gabez eztudala frutu handiric idoki confirmacionetic, eta, ciremac ere, laster galdu dutudala ohico urhatsetara utçuli niçalacoz. Bena sacramentu harec ereicheki ceitadalacoz ecin galtcen deu caractera edo seiñalebat, esparantcha dit frutu hourac nitan berriz phizturen direla, conbertit-

cen niçalaric. Içan cite ene arartecaria Jincöaren eretcian. Othoi eçaçu Izpiritu saintia nitara bere dohaiñac harçara ichour ditçan, amorecatic içan nadin Khiristi osso eta perfeit.

Ama misericordiazcoa, gouretçat othoitze eguiçu. « Contricionezco actebat confirmacioniaz baliatu gabez *Pa-* » *terbat*, hamar *ave Maria* eta *Gloria* » Izpiritu saintiaren deitceco. »





## HOGUEI ETA-BEDERATÇUGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Mariaren bicitcia Izpiritu saintia jaitsiz gueroz.

« *Buriala helturen dena salbaturic* » *dateke.* »

GRACIAZ nahi bada betheric eta berthuteric handieneco, thaïc gabe aplicatu cen Jincöaren ama, merechimentiac eta gloria emendatcen ahal ceitcen obrer. Beitçakian eztela eguiazco berthuteric obrazcöa baicic, behin ere beno hobeki ocupatu içan cen celuco guicez eta protsimoaren intresez. Bere elhe hounez apostoliac animatcen çutian, bihotzic gogorrenac hounkitcen, ez acholac phitzerazten eta bekhatoriac arrajinerazten. Hitz batez erraitera, ezta dudaric, Jesusec beçala, bere denbora igaran ciala hounki eguiten, eta, Celian arartecari dugun beçala, lurrian eràcatsi deicula noula behar dugun gobernatu, Jesus uduri içateco.

Nahi baniz ukhoric gabe berthutian aitçinatu eta burutan jouan, iraiteco bideric hobena hartu behar dut. Niçan beçalaco flacoa; hambestetan eta haiñ itchouski erori niçana! Cerc emanen deitçat haiñ beharrac dutudan animöa, indarra eta thai gabia? Sacramientetan dutut horic oro edirenen. Nahi ezpaniz harçara ohico bekhatietara erori behar dut ardura eta ountsa cofesatu eta saintuki comuniatu. Cer nahi erran decen mundian, nihaurec bostetan erran dudan beçala ardura sacramentietara hullantcen cirenez, hourac gabe nekez berthutian iraiñen dut, hourac gabe laster flaco aguituren niz berriz ere.

Ama houna, o maria! ardura cofesatuz baicic eniçanaz gueroz Jincöari fidel egoiten ahal, garhaiteraz eçadaçu urhats horren eguiteco dudan herabia. Eracats eçadaçu ountsa cofesatcen, erran nahi beita, umilki, sinpleki, garbiki eta osoki, ene cofesorac erranen eta manhaturen deiztadan ororen susmeski eta obedienki eguiteco. Borontate azcarbateki othoitcen çutut, Maria, beitakit çounbat etchekitcen ciren ene salbamentiari.

« O Maria houna, gouretçat othoitze
» eguiçu: Contricionezco acte bat aski
» ardura eta ountsa cofesatu gabez.
» *Paterbat*, hamar *Ave Maria* eta *Glo-*
» *ria* hobeki cofesatceco. »





## HOGUEI ETA HAMARGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Mariaren hiltcia eta celialat igaitia.

« *Noulaco bicia halaco hiltcia.* »

Amorioaren handiz hil içan cen Maria. Eliçaco aiten sinhestia da, etcela Ama Birjina ez adinaren handiz ez eritarçunez hil, bena amorioaren handiac ethen ciala haren biciaren haria. Khanderabaten arguia, ezti eztia, hiltcen den beçala, amoriozco hasperen bateki Mariaren arima elkhi cen haren khorpitzetic, hegaltaca aingurien artian celictan gora jouaiteco. O hiltce eztia eta gloriousa..

Nahi baniz saintuki hil, behardut saintuki bici. Behardut oraiartinóco bekhatiez penitentcia eguin. Bena nouiz? Gueröari fidatu behar duta? Orai beno ehiago datekia guero? Nourc erran dereit denbora igaran ondöan ene bekhatien hanbatez emendatcen, Jin-

cöac emanen deiztadala conbertitceco borontatia eta artia. Ugurukiren duta arren azken mementöa? Ez, nour baniz. Ez, nahi ezpaniz beste hanitch beçala, sacramentiac errecebitu gabe hil. Ezpeitakit nouiz, ez noun, ez noula hilen niçan, orai danic behar dut arren saintuki hiltceco estatian jarri.

O Maria! çounbatetan ezteiçut erran jakin gabe cer erraiten nian, *othoitce eguiçu ene gatic orai eta ene hiltceraco orenian*. Bena merechi ere banukia balia çakiztadan beharrenic niçatekian oren hartan, ezpadut nihaurec arte hortan eguin ahala eguiten? Ez, ez duda gabe. Ere iseatuco nuçu, çoureki batian, saintuki gobernatcera, hala segurtaturic beituket çoure lagungöa saintuki hiltceco.

« O Maria, balia çakitçat hiltcera» couan. *Patcrbat*, hamar *Ave Maria* » eta *Gloria*, hiltce houn baten galthatceco. »





## HOGUEI ETA HAMECAGUERREN EGUNECO MEDITACIONIA.

Maria goure áma da.

Salbaturic içateco ezta aski ountsa hastia, aitcina eman behar da eta buriala heltu. Mariaren cerbutchari handienetaric batec cioen: ukhatu gabe jincöaren ama cerbutchatcen, maithatcen eta othoitcen badugu, salbamentia segurtaturic dugula. Estugu beldur içateco harec lehenic abandona guitçan, dio saintu berac, bena bai gu aski esker gabe içan guitian haren cerbutchutic emeki emeki elkhitceco. Besteric çounbatec, ountsa hasiric, eztie gaizki urhentu; eta salbamentia urhentce hounari dago. Duda gabe hanitch eri da ountsa hastia; aitcina jaraikitiac esparantcha eman behar du, bena ezta segurtamenic buriala heltcen denaren baicic.

Nahi baguira fermo egon Mariaren cerbutchian, ez guitian mundiari jarraiki, hala hala, laçukeriari eta herabia-

ri behatu gabe goure buriac bortcha ditçagun. Mariaren debocioniareki ecin ohatcen diren urhatsac hauts ditçagun, eta aplica guitian cincinez harec praticatu dutian berthuten praticatcera. Guisa horrez garhaituren dutugu demonioaren tentacioniac, bihotzac bakian dutukegu, eta, herioa nouiz nahi jin dakigun, ezguira lazturen eternitatiaren lotsaz. Contsecra ditçogun arren berriz ere goure buriac ama Birjinari, eta erran deçogun amorio eta confidantchareki, hilabete hounen urhentciareki.

—

CONTSECRACIONEZCO ACTIA.

« O Maria, Birjina ecinago saintia
» eta ene erreguiña! çoure gomendian
» baratcen nuçu, çoure misericordiari
» hersatcen nuçu, çoure eskietan eçarten diticçut, bici niçaneco, eta berheciki hilen niçaneco ene khorpitza,
» ene arima eta nic dutudanac oro, eskentcen dereitçut ene phenac eta
» beldurrac, ene contsolacione eta es-

» parantchak amorecatic, çoureki ba-
» tian, o arartecari photeretsia, eta
» çoure merechimentien medioz ezte-
» cedan jagoitic deusetan ere ukhen
» beste chederic, çouri khausitzia eta
» coure seme dibinoari gogara eguitia
» baizic. Halabiz. »

« O Maria bekhatu gabe contcebi-
» tu içan cirena gouretçat othoitce
» eguiçu. »





## CONTSECRAÇIONEZCO CANTICA.

I.

Contsecratcen guitçaitçu Birjina Saintia.
Eracouts eçaguçu celuco bidia.
O Birjina Maria
O Ama maitia !
Nahi guitcaitçu bethi
Fidelki jarraiki.

II.

Jinco Jauna jakile , cin dugu eguiten
Lealki çutugula bethi maitaturen.
O Birjina Maria
O etc.

III.

Çouri ukho eguinen dugun beno lehen
Orai danic hiltcia deiçugu galthatcen.
O Birjina Maria
O etc.





HIROUR EXENPLU AMA BIRJINARI. DEBOT IÇALERA GOGATCECO HOUN DIRENAC.

## MARINELA.

DOZENEBAT barco, edo ountci chipi, martchandioaz cargatiac baçoatçan, itchaso Adriaticoa gainti, Benisaco hiriari buruz. Arratsan beltu ciren portu chipi batetara, noun hitzartu beitcien gaiaren igaraiteco. Portu houra aguitcen cen *Andere Dona Maria Loretacoaren* ungurunetan, eta haiñ chuchen biharamuna Ama Birjinaren besta egun bat.cen. Marinelec, ceren cireu halaco gunia eta eguna, desiratu cien meçaren entçutia biharamunian *Andere Dona Maria Loretacoan*, nahiz bi edo hirour orenen bidia eguin behar çukien. Capitaiña etcen idea hartaco; harc cioen: Turken ountciac itchaso hari gainti çabiltçala; galupac harturen eta irouanen ceitcela berac debocionian cirelaric. Antonio deitcen cen Marinel-

batec erran ceron : Ene capitaiña, eztuçu perilic nahi gaberic hel dakigun, Ama Birjinaren cerbutchian guirelaric. Bena, hobeki eguiteco : çouazte bihar oro *Loretarat*, eta utci neçacie nihaur barcöen beguirari; nitan gaiñen hartcen dut Turketaric hen beguiratcia, atacatcera atrebitcen badira. Jakin eçacie, Ama Birjinaren sokhorriareki batian, enintçatekiala lotsa Turken Emperadoriaren ountci gucien. Marinelaren corajiac eta animoac erri eraguin ceren laguner, eta capitaiñac topatu cian Antonioren proposicionia : Biharamunian, Marinel guciac abiatu ciren arguia gabe *Loretarat;* Antonio baratu cen bera barcöen beguiratceco. Paseuz çabilalaric, pipa ahöan, arguiaren urratciari bela batçu uduritu çaitçon hurruniala. Arguiaren çabaltciari, eta ountcien hullantciari, eçagutu cian bela hourac Turkenac cirela. Haiñ sarri, ountsa ikhoussi çutian hoguei barco aski handiac, eta hen ibilteco airetic segurtatu cen buruz jiten ceitçola ungaratcera eta hartcera.

Bere beitharic erraiten du : Antonio, orai duc eracoutsi behar buru eta

coraje badiala ; bena, halere, cer eguin diroc hibaurec hanbesteren contre. Birjina houna, çouri dagoçu ene inspiratcia eta laguntcia. Eztiket balimba auherretan ene confidantcha çutan eçari ; eztukeçu nahi balinba contsecraturic çaiçun eguu hountan çoure icen saintiari oguenic ereicheki! Hitz horic erranic, bodöa erresolutoki Turken aldialat azkena cen barcöala, han. etçaten eta coucoutcen da, aizcorabat eskian, bere beitharic cioelaric : Cer nahi den ; lehenic sarthuren den Turkari buria jauseraciren deroc; guero içanen bada ere guero beçala. Hanbestereki borogatcen du bareoa iharrausiric. Turk bat hullantu cen eta eskiaz atcemanic barcoaren heguia, bere ganat thiratcen cian. Ikhoussi dian beçain sarri, Antonio chutitcen da bere belhaiñetan gaiñen, eta aizcora colpu handibatez Turkari ukharaia mousten dero, noun eskia barcöaren alde barnialat erori beitcen. Antonio berriz coucoutcen da, beha nouiz bestebat jinen cen. Bena colpaturic cen Turkac heiagora erdiragarribatez harrirari çutian bere lagunac ; eta erran ceren :

tronpatu nahi gutie : barco horietan gorde da guiçon armatu saldobat goure susprenitceco. Ihes, ihes eguin deçagun, ezteçagun uguruki ataca guitcen. Antonioc, enthelegatcen beitcian Turken lengoajia, eiri eguin cian hitz horien entçutiari. Buria eraikiric ikhousi çutian etsaiac orducoz hurrunturic. Eskerrac eman ceitçon Ama Birjinari ceren libratu cian, eta uguriki çutian bere lagunac, luce etsitu beitceron hen utcultcia. Jiten ari ciren berhaiñ, bena bihotzac beltcic. *Loretaric* utçultcian, heguribatetaric ikhousi çutien Turken ountciac lehiatuki erretiratçen; etcien dudaric Antonio eta barco guciac bereki iroaitençutiela. Capitaiña desentenaturic cen, eta marinelac desolaturic, baçoatçan hareki ountciac utci çutien guniala, hen ikhousteco esparantçaric gabe. Espantaturic eta decebituric jarri ciren heltciari, ikhousi çutienian bere barco guciac, eta Antonio dantzan eta cantatcen ari, aizcora goraric, eta escu odolstatubat hari chilinchan. Ecin phentsatcen cien cer cen hori; bena Antonioc erran ceren cer igaran cen, eta oro hasi ciren Ama

Birjinaren Lethaiñen cantatcen, hari garhaiti edor horrez eskerren emaiteco.

Antonio marinelac beçala eçar deçagun goure confidantcha Ama Birjinan, harec ihes eraguin dicen goure salbamentiaren etsaier; bena ere; marinel houra beçala prudentki eta borthizki etsaiari buhurt guitian hatsarretic; colpa ditçagun lotserazteco eta prisaren utcerazteco guisa, etsi decen behincoz goure atakatcia.

—

## SOLDADOA.

*Beau-Sejour* deitcen cien Soldadobatec erraiten çutian egun oroz çazpi *Pater* eta *Ave Maria*, Ama Birjinaren çazpi alegrancien eta çazpi doloren ouhouretan. Nourc eracatsi ceron debocione hori? eta noula gobernatcen cen debocione horreki? Eztakit; nic dakidana da; hanitch etchekiten cela debocione horri, eta etcerola behin ere hutsic eguin. Ohian etçanez gueroz ere, orhitcen balin bacen eguin bide hori etciala eguin, jeikiten cen hain sarri,

